**Amaierako otiotza** (*guztiok egitekoa*)

Zure aurpegia erakutsi deuskuzu Jainko Aita
eta irribarretsu agertu zaiakuz,
maitale eta errukitsu
zure seme-alaba bihurrioi
gure gehiegikerietatik eta pekatu loturetatik
askatu gura gaituzulako.
Eskerrik zintzoenak emoten deutsuguz
eskari sendo bat eginez:
egin gaizuz zeure seme-alaba errukitsu
gizarte baketsu bat eraiki ahal izan daigun
eta zeu agertu zaiguzan
gure egintza guztietan eta egunero.
Jesukristo gure Jaunaren bitartez.
—Amen.

**Bedeinkapena**

† Jauna zuekin.
—Eta zure espirituarekin.
† Bedeinka zaizela Jainko ahalguztidunak: Aitak eta Semeak † eta Espiritu Santuak.
—Amen.
† Parkatu edeutsue Jainkoak: zoaze Jaunaren bakean.
—Eskerrak Jainkoari.



# 2012ko GARIZUMAKO PENITENTZIAREN ALKARTEKO OSPAKIZUNA

edo barruak adierazten deuskun beste berbaren bat. Baina agertu berbaren baten damu-otoitza.

*(Doinua....)*

**Askapen-otoitza**
† Jainko Aita errukitsuak,
bere Semearen heriotza eta biztuereaz,
mundua beragaz baketu ebanak
eta Espiritu Santua isuri euskunak
pekatuen parkamenerako,
emon deizuela Elizearen bitartez
parkamena eta bakea.
Eta neuk parkatzen deutsuedaz zuen pekatuak:
Aitaren eta † Semearen eta Espiritu Santuaren izenean.
—Amen.

**ESKARIAK**

Maite gaitulako gura dau Jainkoak bere seme-alaben ona; jo daigun eskale beragana, seme-alaba bere antzekoak izan gaitezan:

—Jainkoaren erreinuaren ezaugarri dan gure Elizearen alde: pobreenengana heltzea bilatu daian, eta honeentzat duintasuna bilatu daian aldi eta leku guztietan, *eskatu deiogun Jaunari*.

—Herrialde garatuen diru-goseak eta ondasun pilaketeak azpigaratuta daukazen herrialdeen alde; menpekeria



† Bere izate osoa, maitasunean, gugaz alkarbanantzen dauan Jainkoaren grazia eta errukia izan bediz zuekin.
—Eta zure espirituarekin.

**Otoitza** (*Egin daigun otoitz)*

Bizkortu egizu gugan, Jauna,
zure errukiaganako eta maitasunaganako egarria,
gure beharrizan guztietan lehenago besteenak ikusiz
errukiz eta maitasunez erantzun ahal izan deiegun.
Jesukristo gure Jaunaren biatrtez.
—Amen.

## Hitzaren liturgia

*(Erramu egunekoa)*

**Sarrera-oharra** *(Ohargileak)*
Zer da handi egiten gaituana? Asko eukitea, eta horregaitik ahalegintzen gara pilatzen, ondasunak metatzen, besteak gosez edo ezergabe izten? Jainkoaren seme-alaba zelango aldrebesak garan! Entzun!

**San Paulo Apostoluak Filipoarrei egindakotik** (Flp 2, 6-11)

Kristo Jesusek, Jainkoaren izaera bereko izanik,
ez eutsan gogor eutsi Jainkoagaz bardin izateari;
bestela baino, bere izaeraz hustu egin zan
morroi-izaerea hartuz,
eta beste edozein lez azalduz.
Eta, gizon lez agerturik,
apaldu egin eban bere burua,
menpeko eginez heriotzaraino,
kurutzeko heriotzaraino.

nago, neure debozinoetan, neure eginbehartxoetan, neure bildurretan, neure negarretan... eta ez deuste zure aurpegi alaia eta irribarretsua ikusten izten. Egin naizu zeure entzule. Jarri naizu zeuri begira. Bihozbarritu naizu.

—*Erruki, Jauna*.
**PEKATU EGIN DOGU-TA.

—Jainko Aita errukitsua: ondasunak zure seme-alaba guztiontzat jarten dozuz. Baina hemen, batzuk metaka pilatzen dabez, beste asko gosez hilten ikusi arren; batzuk ez doguz ondo erabilten, edo alperrik galtzen doguz, planeta hau hondatzen dihardugula konturatu barik... Entzun daidala pobretuen eta gitxituen garraxia; gauzen eta ondasunen neurria hartu daidala eta banandu behartsu bihurtu doguzenekaz.

—*Erruki, Jauna*.
**PEKATU EGIN DOGU-TA.

—Bakearen Jainko errukitsua: gure artean *neu nausi edo musturrak hausi* dogu lege; goitik behera, agintetik oinarrietara egin gura doguz gauzak. Zuk zerua utzi eta gure artean txiki agertu zinan hori ez zaukaguz gogotan. Emoiguzu bestearen ikuspuntuak entzuteko eta ikusteko ahalmena, geurea azaltzeko argitasuna, eta danon lorpen izango dan bakea zeure erregalu lez hartzea.

—*Erruki, Jauna*.
**PEKATU EGIN DOGU-TA.



Zure salbamenaren poza bihurtu egidazu,
zure arnasa zabalez sendotu nagizu.
Edegiko deustazuz ezpanok, Jauna,
eta nire ahoak iragarriko dau zure gorespena. R/.

**Ebanjeliorako oharra eta harrera kantua** (*Ohargileak*)
Ondasun-gose danak behartsuari begiak eta ateak itxi egiten deutsoz, eta ez da jabetzen bere txarkeriaz, inori ez deutsolako txarrik egiten. Itsukeria horretatik atara nahi izango gaitu Jesusek. Egin deiogun harrera on, abestuz:

*AINTZA, JESUS, ZURI BETI: ZU ZARA GURE ARGI!*

*(Garizumako 2. asteko eguastena)*

**† San Lukasen liburutik** (Lk 16, 19-31)

Aldi haretan, honan berba egin eutsen Jesusek fariseuei: «Bazan gizon aberats bat, purpura eta liho finez jantzi eta egunero jai ederrak egiten zituana. Lazaro izeneko eskale bat, barriz, aberatsaren etxe-atarian etzunda egoten zan, zauriz josita; gogotsu jango zeukean aberatsaren mahaitik jausten zana. Txakurrek eurek ere etorri eta zauriak milikatzen eutsoezan.
Honetan, hil zan eskalea, eta aingeruek Abrahamen altzora eroan eben. Hil zan aberatsa ere, eta lurperatu eben. Hilen Egoitzan oinazetan egoala, begiak jaso eta Abraham ikusi eban urrun eta Lazaro haren altzoan, eta deadarka esan eban: "Aita Abraham, erruki zakidaz! Bialdu egizu Lazaro atzamar muturra uretan busti eta niri mihina freskatzera, oinaze gorritan nago-eta sugar honetan". Baina Abrahamek erantzun eutsan: "Seme,

## 2012KO GARIZUMAKO
## PENITENTZIAREN ALKARTEKO OSPAKIZUNA
## (GERNIKAko Andra Marin, 03/31n...)

**Sarrera oharra** *(Ohargileak)*

Senideok: Pazkoetan bizibarritu lez agertu ahal izan gaitezan, Jainkoaren errukira joten dogu geure pekatuen aztuntasunaz, bere errukian hartu gaizan, eta bizibarriturik atara gaizan. **Jainkoaren maitasuna ospatu nahi dogu, haren errukiaren barri izan nahi dogu, Jesusen biztueran eskuhartu nahi dogu, eta geure egunotan bizi izan nahi dogu**. Bilatu daigun, ba, ez horrenbeste gure makaltasuna eta pekatua, Jaungoikoaren maitasuna eta errukia baino; eta izan daitela gurea, egunero sentitzen dogun Jainkoaren maitasunari erantzuten ahalegintzea gure eguneroko egintzatxoetan.

**Sarrera abestia**

**R/ Zure aurpegi bila gabiltza gu, Jauna,**
**Zu zaitugu argi eta salbamen,**
**zu, Jauna, biziaren babes.**

Ez gaitu hartzen gure hobenen neurrietan,
ezta joten ere gure erruen ordainetan.
Berak deutsuz, bai, parkatzen zure hobenak
eta osatzen deutsuz harek zuri gatxak danak. R/.

**Abadearen agurra**

† Aitearen eta Semearen eta Espiritu santuaren izenean.
—Amen.



horretatik askatzen joan daitezan, eta danentzako diran ondasunen atsegin izan daien, *eskatu deiogun Jaunari*.

—Lurralde garatuetan bizi garanok diru-egarria baztertu ahal izan daigun, eta herrialde pobretuekaz alkartasuna erakutsi daigun, *eskatu deiogun Jaunari*.

—Gozatzen doguzan ondasunak ez daiguzan geureak balira lez ulertu, banantzen jakin daiguzala baino, guztionak, batez ere behartsuenenak balira lez, *eskatu deiogun Jaunari*.

—Jainkoaren errukira hurreratzeko zoria daukagunok geure errukia erakutsi daigula gure inguruan krisiaren ondorioak sufritzen dagozenekaz, *eskatu deiogun Jaunari*.

† Jainko gure Jauna: emoiguzu zure parkamenaren barru-barruko poza, esperientzia horren banantzaile izan gaitezan gure eguneroko bizitzan. Jesukristo gure Jaunaren bitartez.

—Amen.

**Amaiera abestia**

Jaungoikoaren hegoenpean: ze bakean, ze bakean;
indar guztiak dituanaren gerizpean, gerizpean.
Jauna, nik dinot: «*nire gerizpe dot zuregan*».
Bihotz guztiaz nago Jaunaren eskuetan.

Horregaitik, Jainkoak goratu egin eban
eta izen guztien gaineko izena emon eutsan,
Jesusen izenera belaun guztiak makurtu daitezan,
zeruan, lurrean eta lurpean,
eta mihin guztik autortu dagian:
Jesu Kristo, Jauna da, Aita Jainkoaren aintzarako.

***Jaunak esana*.**

**Erantzun salmoa (**Sal 50,3-4.5-6ab.12-13.14 eta 17)

Salmugileagaz batera, jar daigun gure uste osoa Jainkoagan eta, gure pekatua autortuz, sartu gaitezan bere errukian.

**R/. Erruki, Jauna, pekatu egin dogu-eta.**




Erruki zakidaz, Jainko, zure maitasun handiaz,
kendu egizu nire errua zure amaibako errukiaz.
Garbitu nagizu zeharo nire hobenetik,
garbitu nire gaiztakeriatik. R/.

Nire bihurrikeria ezagutzen dot,
nire hobena beti begien aurrean daukot.
Zeuri egin deutsut pekatu, Zeuri bakarrik,
zure begietan oker dana egin dot nik. R/.

Bihotz garbi bat, Jainko, sortu egizu nigan,
arnasa bizkorra barritu egizu nire barruan.
Ez nagizu urrundu zeure aurretik,
zure arnasa santua ez kendu niri. R/.



Jainko Aita maitale errukitsua: maite gaituzulako ezagutzen gaituzu, eta ezagutzen gaituzulako deuskuzu itxaroten, parkatzen eta dei egiten. Ez daigula bakarrik egin gura izan danon artean eginbeharreko gizarte senidekorragoa, ekonomia zuzenagoa eta bake danontzakoa. Gu garana agertu daigula gure inguruan egunero eta egoera guztien gainetik: zeure seme alaba aske eta maitaleak.

—*Erruki, Jauna*.
**PEKATU EGIN DOGU-TA.

*Guztion pekatu-egoera honeaz danok jabetuz, leporatu daigun bakotxak berak daukan ardura zatia, eta, damutasunez, egin deiogun dei Jainkoaren errukiari, alkarri laguntza eskatuz:*

Autortzen deutsot Jainko guztiz ahaltsuari
eta zuei ere bai, nire senideoi,
pekatu egin dodala,
gogapen, hitz eta egitez,
eta eginbeharrak ez eginez:
bai, pekatari naz.
Horregaitik eskatzen deutset
Andra Maria beti Birjineari,
Aingeru eta santu guztiei
eta zuoi ere bai, nire senideoi,
otoitz egin deiozuela nire alde
Jaungoiko gure Jaunari.

***Goazen orain, damutasunez, Jainkoaren parkamenaren besarkadea hartzera. Esan daigun abadearen aurrean buru makur:***

gogoratu zaitez zuk zorion ugari izan zenduala bizitzan; Lazarok, barriz, zorigaitzak; horregaitik, orain harek atsegina aurkitu dau, eta zuk oinazeak. Gainera, gure eta zuen artean leize handia dago, eta gurata ere ezin da inor hemendik igaro, ezta hortik gugana ere".
Aberatsak barriro: "Orduan, aita Abraham, bialdu egizu, arren, Lazaro gure aitaren etxera, bost anaia baditut eta; jarri dagizala jakinaren gainean, eurak ere oinazeleku honetara etorri ez daitezan".
Abrahamek erantzun eutsan: "Hor dabez Moises eta Profetak; entzun deieela".
Harek barriro: "Ez, aita Abraham; hildakoren bat joango balijake, bihozbarrituko litzatekez".
Baina Abrahamek erantzun eutsan: "Moisesi eta Profetei entzuten ez badeutsee, ez dabe sinestuko ezta hildako bat biztuta ere"».

**Homilia**

—Bihozbarritzea, Jainkoaren grazia, ez norbere ahaleginen eta ekinaren ondorio edo frutu.

—Jainkoagana begira jartea da; berari eta ez beste inori entzutea; ingurura haren esanetatik eta ez beste pentsamolde ezeinetatik begiratzea.

—Krisiaren eztena sufritzen dogu. Aspaldi, eta askoz ere gogorrago sufritzen dabe beste herrialde batzuk... Gogoan doguz? Eta zer lagako deutsegu gure seme-alabalobei?

—Norberea baino ikusten ez badakigu, besteek neuk lez uste izan daiela, ikusi daiela, kontsumitu daiela..., nahi izango dogu. Bide horretan zehar ze eratako BAKEA lortuko dogu?

—Maitasunaren eskakizunak: norbere buruaz ahaztu, norbere usteak, asmoak eta amesak, besteenen atzetik jarri. Geurea baino ez bilatzeak ez deigula bestea "transparente" bihurtu, ikus-ezin.

**Gogo-azterketea** (*Ohargileak*)

Ez da bakarrik nik pekatu egiten dodala eta damutu beharra daukadala; gehiago da. Nik, besteekin batera, inguru pekatari bat egiten dot, eta, sarritan, pekatu egitera naroa inguru horrek, besterik gura izan arren. Ez dot, ba, nahikoa neure pekatuaz parkamen eskatzeaz; besteekaz bat egin behar dot parkamen eskari horretan, eta Jainkoaren errukian jarri behar dot uste on osoa, berak bihurtu gaizan...

Jo daigun, ba, alkarregaz Jainkoaren errukira.

**Damu-agerpena eta parkamen-eskaria**

**—**Jainko Aita errukitsua: *neurean* bizi izan naz, neure ona bilatzen, neurera baino beste inora begiratu barik; eta zeu ere neure esanetara jarri gura izan zaitut, nire ezinak zeuk konpondu zengizan. Emoidazu benetako damua zeure aurpegia bilatu daidan, eta zeure esanetara jarri naiten (...).

—*Erruki, Jauna*.
**PEKATU EGIN DOGU-TA.

—Jainko Aita errukitsua: oraindino neure ohituretan